#27
2015 UDABERRIA



# Tinta Roja

Prezioa: 1€
Editatzaileak: Gazte Komunisten Kolektiboak-CJC




1985 - 2015

## Gazteria **Komunista**




* *Hezkuntza* ***Sozialista***
* ***3+2:*** *Unibertsitatetik kanporatua zaude!*
* *30 urtetako historian zehar eginiko gure proposamen* ***sindikala***
* ***PCPE*** *datozen hauteskundeen aurrean*

*[...]*

# Index













**2015eko udaberria**

**Editatzaileak:** Colectivos de Jóvenes Comunistas | D.L. AB-119/2012

**Kontaktua:**
www.tintaroja.es | tintaroja@cjc.es

**Zuzendaria:** Adrián J. Bertol

**Zuzendariordeak:** Mikel Tapia, Domènec Merino y Ana Escauriaza

**Diseinua eta maketazioa** Alejandro Sanz eta Cristian Popa

**Argazkilaritza:** Alejandro Sanz eta Miguel Coello

**Kolaboratzaileak:**
Mikel Tapia, Guillermo De Tuya, Javier M. Rodríguez, Domènec Merino, Rubén Muñoz, Antón Ferreiro, Alejandro Sanz, Alberto Colomo, Luis Muñoz Gutiérrez, Ana Escauriaza, Roberto Guijarro, Pedro Pérez, Reguera, Eric Rodríguez, Ester Cubero, Rafael Medina, Víctor Moreno, Liher Calleja, Ástor García, Kevin Álvarez, Fernando Puertas, Aitor Yagüe eta Vanessa Rodríguez.


## ★ Gomendioak

### *TintaRoja.es Atari Digitala*

Gazteriari eragiten diguten **albisten** gainean egoteko eta gaurko gaiei buruz **Gazteria Komunistaren posizioa** ezagutzeko, Tinta Rojaren atari digitala **egunero bisitatzea** gomendatzen dizugu: www.tintaroja.es




### *Unidad y Lucha*

Monopolioek erakusten diguten informazioaren aurrean, langile klase antolatuak bere aldizkari propioa dauka: **PCPEko Komite Zentralaren adierazpen organoa.** Ez jarraitu beraien istorioak sinesten. UyL langile klasearen Alderdiaren aldizkaria da, langileek eta langileentzako idatzia.

### *Komunistak Erresistentzia Errepublikar Nazionalean*

Unidad y Lucha argitaletxeak **"Komunistak Erresistentzia Errepublikar Nazionalean"** liburua argitaratu du, PCPEko Komite Zentralaren kide izatera helduko den Juan Ambouk idatzia. Bertan **Asturiasko frontean bizitako esperientziak** kontatuko dizkigu, faxismo atzerritarraren erasoen aurka, matxinatu faxistekin batera espainiar herriaren sarraskia ekarri zutenak. Batez ere interesgarria da **gerran alderdi bakoitzaren zeregina ulertzea,** eta ikustea nork jarri zituen Herri Ejerzitoa sortzeko oztopoak.




## ★ Bitxikeriak

### *Ba al zenekien Antonio Gades dantzari ospetsua komunista zela?*

"Ni ez naiz artista… Ni langile bat naiz, **kulturaren langilea,** baina langile bat" zioen Antoniok 1984an

1939an jaio zen Eldan (Alicante), langile familia xalo batean. Txikitatik jasan zuen gosea, lan gogorra eta faxismoaren zapalkuntza. Haren talentuagatik, Espainiako dantzari eta koreografo ospetsuenetariko bat bihurtu zen.

Hala ere, Antonio Gades komunista, iraultzaile, marxista-leninista, **PCPEren sortzaileetarikoa eta honen Komite Zentraleko kide,** eta Kubatar Iraultzaren lagun leiala zen. Inoiz ez zuen ospearen argitasunak itsutu, eta artea bere esanahi gorenera eraman zuen: gizartea aldatzeko tresna modura.

Gabriel Celayari so eginez, erakutsi zuen **artearen edozein espresio ez dela luxu kulturala** eta beharrezkoa dela honetaz baliotzea.




# Erredakzioa

Maiatzak 24ko hauteskundeei begira, **intentzio guztiak dira onak**. PPk, kapitalista handien alderdia kontsideratua denak, orain arte ezarri dituen politikak defendatzen ditu **krisiaren irteera gerturatzen ari dela ilusionatuz**. Politika horiexek langile klasearen gaineko esplotazioa igoarazi dute, bereziki gazteriarena, errepresio poliziala areagotu dute, Alfon, Coca Cola-ko langileen eta Cerredoko meatzearien aurka jo duten bezala. Horretaz gain, hezkuntza eta osasunean zerbitzu publikoak murriztu dituzte. PSOEk bere aldetik, herriaren sinesgarritasuna galdu ondoren, PP kritikatzen du norabide aldaketa baten alde apustua eginez, lana berriz galtzeko? PPri bidea berriz zelaitzeko beste kontrarreforma laboral batzuk ezar ditzan? Azkeneko 33 urte hauetan gobernua elkar trukatu duten bi alderdi hauek **langile klasearen eta herriaren sostengua dagoeneko ez dutela** argi geratu da.

Botere krisi honen aurrean **alderdi berriak sortzen dira euren burua "alternatiba" gisa salduz**, naiz eta beraien politikak ezagunak diren gobernua ukitu duten une bakoitzetik. Alde batetik, **"alternatiba" abertzaleak** ditugu, langile guztien batasunari dei egin beharrean burgesia osoaren aurrean, burgesia nazional edo erregionalen banderenpean ipintzen gaituzten alderdiena, klase aldarrikapenak alboratuz. Beste aldean berriz **"alternatiba" erreformistak** ditugu, PSOEren sozialdemokraziaren porrotaren oinordekoak, behe-burgesia eta langile aristokraziaren (klase ertaina bezala ezagutuak) proletarizazioaren espresio direnak, gobernutik egindako erreforma txiki batzuen bizen posible dela krisi ekonomiko orokorra gelditzea esanez saldu nahi gaituztenak.

Azken hauekiko sakonago hitz egitea beharrezkoa da, ez baitira gazte eta langile gutxi hauengan konfiantza ipintzen ari direnak. **Ahal Dugu/Podemos, Ezker Anitza/Izquierda Unida, edo Irabazi/Ganemos bezalako alderdi edo plataformez ari gara**.

Zer irabazi dezake langile klaseak, gazteriak eta herriak beraien programa erreforma superestruktural txikietan oinarritzen bada, banka pribatuaren, ekonomiaren sektore estrategikoen eta instituzioen jabetza aldatzea errefusatzen dutelarik? Ze indar sozialarekin ezarriko dituzte beraien neurriak, **langile eta herri antolakuntzara deitu beharrean fronte bakarrean**, gobernu aldaketa batekin gauzak aldatzea nahikoa delaren ilusioa eskaintzen badute?

Gainera, gutxi izango balitz, **hasieran aldarrikatu zituzten errebindikazio asko, EBrekiko haustura edo OTANekiko ezetza adibide, albo batera utziz joan dira**. Bestela, euren greziar erreferentearen adibidea aztertu dezakegu, Syriza. Honek, behin gobernura iritsita, ez dio trabarik jarri EBn eta OTANen jarraitzeari, eta gainera bertako PPko alderditik bereiziz sortu zen alderdi batekin intundu dute, greziar PPren eskubitan dagoena. Gobernuan egoteko aukerak handitu ahala, konturatzen dira egungo instituzio kapitalistek eskaintzen dioten maniobra tartea zein estua den. **Ez baitago aldaketarik burgesiaren eskutan dagoen egungo botere instituzionalarekin amaitu gabe!**

Ondorioz, hurrengo hauteskundeei begira, gazteriak, langile klaseak eta herriak hautua egin dezake. Gaingiroki **hiru aukera ditugu**. Lehena **"hobeto ezaguna denn ona ezagutzeke dagoen ona baino"** esatea da, esaera zaharrak dioen bezala; bigarrena **erreformismoak eskaintzen duen iltze goriari heltzea** da; eta hirugarrena langile eta herri indarrak egituratzen saiatzen ari den erantzun antolatuan konfiantza izatea da **EB, NATO eta kapitalista handiengandik at** botere politiko bat ezartzeko.

Hirugarren aukera honen alde egiten bada, igaro den otsailak 26ko ikasle grebaren, Coca Colako langileen borrokaren, Madrid Río, Minerplan, eta abarren eta gazteria, langile klasea eta sektore herritarren borroka guztien esperientzia berea egiten duena EK-PCPE eta GKK/CJC gurarituta egongo dira borroka-postu bat eskaintzeko komiteetan, auzo, ikastetxe eta lantoki bakoitzeko elkarte eta kolektiboetan.

**Botere guztia langile klasearentzat!**

*Adrián J. Bertol*

Soilik hiru aukera politiko dauzka Gazteriak

# Hezkuntza Sozialista

## Herriaren mesedetara egongo den hezkuntzaren alde borrokatzea

## Sozialismoaren alde borrokatzea da

Askotan mobilizatzen garen ikasleoi leporatu ohi izan digute ez dakigula zergatik kexatzen garen eta, batez ere, proposamen positiborik ez dugula. Ba Gazteria Komunistan **badugu hezkuntza eredu proposamen bat.** Gure erakundeak hezkuntza sozialista defendatzen du, herri langilearen mesedetara, kapitalaren mesedetara dagoen egungo hezkuntzari kontrajarria. Azken honen erreformek, LOMCE eta 3+2k, atzera pauso bat suposatze dute, baita pauso bat gehiago hezkuntza publikoaren suntsiketaren bidean ere.

Baina, zertan datza sozialista deritzogun hezkuntza hori? Lehenik eta behin **hezkuntzarako sarbidea eta ikaslearen edo bere familiaren erosteko ahalmenaren arteko dependentziarekin amaitzen duen hezkuntza** bat da. Erabat doakoa den hezkuntza bat da beraz bere maila guztietan, material osagarri guztiak barne (jangela, garraioa, testu liburuak, erresidentziak,...). Analfabetismoa erradikatua duen herrialdea den Kubak, adibidez, **doakotasunean oinarrituriko hezkuntza** dauka.

Beharrezkoa da ere **hezkuntza sistema osoa baliabide ugari eta modernoez hornitzea,** baliabide informatikoak barne, noski. Kapitalismoan ez bezala, non teknologiaren erosketa orokorra langile kopuruen murrizpenarekin batera datorren, gure proposamenean irakasle bakoitzeko ikasle ratio baxu batekin konbinatzen dugu hau, kalitatezko irakaskuntza eraginkorra lortzeko bidean.

Gure hezkuntza eredua inklusiboa, berdintasunezkoa da eta ikasleriaren heziketa behar desberdinak kontutan hartzen ditu. Gizartea ez da homogeneoa eta, beraz, hezkuntza sistemak gizartearen beharrak kontutan hartu behar ditu eta bere esanetara egon behar du. Gaur egun ezagutzen dugun hezkuntzan ez bezala, non hezkuntzaren maila guztiak pribatizatzen diren, **hezkuntza sozialistak hezkuntzaren fase guztiak bere gain hartzen ditu,** haurtzaindegitik hasi, lehen, bigarren eta goi mailako hezkuntzatik igaroaz, helduen eskoletaraino iritsiaz. Helburua **gizarte osoaren intelektualizazioa** da, heziketaren ideiari benetako zentzua emanez bizi osoan zehar.

*Hezkuntza eredu bat, zeinak hezkuntzarako sarreraren eta ikaslearen edo bere familiaren erosmen-ahalmenaren arteko menpekotasunarekin hautsiko duen*

Egun gu engainatzen saiatzen dira esanez erreformak hezkuntza sistema gizartera gerturatzeko egiten direla, hezkuntza kapitalaren mesedeetara jartzen duten bitartean: "ez da gustatzen zaizuna ikasi behar, merkatuak eskatzen duena baizik", Ignacio Wert-en hitzetan. Adierazpen hauen aurrean gure alternatiba **benetan gizartearen zerbitzura egongo den unibertsitatea** da, interes bakar batekin: herriaren geroz eta handiagoak diren beharren asetzea. Unibertsitatea gizartearen eskakizunei batuaz, gazteriaren arazo nagusienetariko batekin amaituko genuke: **lan espezializatuaren gabezia.** Esperientzia sozialista desberdinetan, **ikasketen azkeneko kurtsoan ikasleriak bere lehenengo lan kontratua sinatzen du,** dena delakoa izanik ere ikasketa modalitatea; eta, noski, beste langileen kondizio berdinekin, prekarietatea sustatzen duten praktika kontratuekin amaituz honela.

*Esperientzia sozialista desberdinetan, ikaslearen azken kurtsoan zehar, honek bere lehen lan kontratua firmatzen du*

Baina hezkuntza ez da kontzeptuak barneratzea soilik; herriaren zerbitzura dagoen hezkuntza sozialistak honen beharrak asetu behar ditu eta **Che-k zion "gizon eta emakume berria" transformatzen** eta sortzen ahalegindu behar dela benetako hezkuntza sistema bat. Zentzu honetan, politika kultural aktibo bat proposatzen dugu gazteriarekiko, **hezkuntza eta kultura azpiegitura zabal baten sorrerarekin** batera. Aipatzekoa da zentzu honetan herrialde sozialistek egin zuten eta egiten duten esfortzua. Adibidez, Estatu sobietarrak gazteriaren eskura utzi zituen 137.000 klub eta kultur etxe, 350.000 liburutegi, 604 antzoki, 1.526 museo eta 152.000 zinema baino gehiago, Sobietar Errepublika Sozialisten Batasuneko biztanleria munduan liburu gehien irakurtzen zituena bilakatuz.

Beste hezkuntza eredu bat posible da, bai maila teoriko, praktiko eta baita herriaren maila kulturalaren hazkundean ere. Munduko herriek duten potentzial guztia garatzeko hezkuntza eremuan, **lehenengo pausoa garapen hau oztopatzen duen trabarekin, alegia, kapitalismoarekin, amaitzea da.** Horregatik diogu GKK/CJC-tik herriaren zerbitzura egongo den hezkuntza baten alde borrokatzea sozialismoaren alde borrokatzea dela.

*Guillermo De Tuya, GKK/CJCen Ikasle Mugimenduaren arduraduna.*

# Datorren ikasturtetik aurrera, LOMCE gehiago




BI-Mren argazkia, Madrilen LOMCEren aurka burutu ziren ikasle mobilizazioetan

**Pasa den azaroak 28an Kongresuak Hezkuntzaren Kalitatearen Hobekuntzarako Lege Organikoa (LOMCE) onartu zuenetik, modu mailakatuan joan da ezartzen ikastetxeetan. 2015-2016 ikasturtean bere ezarpena ia erabatekoa izango da.**

LOMCEren ezarpenaren egutegiak, 2017-2018 ikasturtean amaitzen dena, **gestio publikoaren gainbehera progresiboa interes pribatuen mesedetarako suposatzen du**. Ikasturte honetan Lehen Hezkuntzan eta Lan Heziketan (FP) nola aplikatu den ikusi ahal izan dugu, eta **datorren ikasturtean zehar, falta diren erreformen ezartzea ikusiko dugu** Lehen Hezkuntzan (2., 4., eta 6. mailetan), Lan Heziketako 2. mailan, DBHko 1. eta 3. mailetan, eta Batxilerreko 1. mailan.

Erreforma honen ondorioak, datorren ikasturteko dekretuak zehazki, suntsitzaileak izango dira familia langileentzat. **Irailetik aurrera DBHko 3. mailako ikasle guztiek Batxiler eta Lan Heziketaren artean aukeratu beharko dute,** unibertsitateko tasa altuekin eta 3+2 dekretu onartu berriarekin ikasle askok Lan Heziketaren hautu aurreratua egitera behartuak izango dira. **Lan Heziketa Basikoaren hautua** egiten duten ikasleek praktikoki ez dute beraien ikasketak luzatzeko aukerarik izango, beraien irteera bakarra lan munduan sartzea izanik titulazio minimo batekin.

> *Datorren kurtsoan zehar, oraindik ezarri gabe dauden erreformen sartzea ikusiko dugu*

Hori da bilatzen dena zehazki: eskulan merkea. Horregatik diogu neurri hau interes enpresarialen mesedetara egina dagoela.

Baina horretaz gain, LOMCEren pixkanakako ezartzeak **ikastetxeen funtzionamendu demokratiko ororen deuseztatzea** dakar, zuzendaritza funtzio guztiak administrazioak zuzenean aukeratutako Zuzendarian eroriaz. Zuzendariaren diktadura ikasleentzako neurri kaltegarriekin batera dator, **Batxiler eta DBHn errebalidak** ezartzearekin batera. Azken finean, datorren ikasturtean zehar LOMCE dator eta herri honetako ikastetxeen errealitatea latza izango da.

*Javier M. Rodríguez*

# 3+2: Unibertsitatetik … kanporatua zaude!



Wert hezkuntza ministroa, enpresarien presidentearekin batera

Otsaila hasieran, Ministro Kontseiluak "3+2" bezala ezagutua den dekretua onartu zuen. Horrela deitzen zaio zehazki **gradu unibertsitarioak lau urtetik hirura murriztuko dituztelako, masterren urte kopurua batetik bira igoaraziz.**

Ikasleriaren eskubideen aurkako eraso hau **lizentziaturaren ordez gradua ezarri eta urte gutxietara jazo da,** honek edukien sinplifikazio nabarmen bat eta karrera gehienen urte murrizpena ekarri zuelarik -bostetik lau urtetara-.

Orduz geroztik **ikasgai eta baita karrera osoen desagerpena** etengabea izan da. Aurreikusi dezakegu prozesu hau azkartu egingo dela orain, enpresa handien eraso bat izanik hezkuntza publikoaren merkantilizazioa lortzeko bidean.

> *Unibertsitate zentroetatik langile klaseko milaka ikasleren kaleraketa suposatuko du, ezin izango baitute masterraren edota graduaren prezioa ordaindu*

Dekretu hau eraginkortasunez aplikatzen bada gobernu zentrala autonomi erkidegoen gobernuekin batera sustatzen ari den neurri guztiekin batera -beken murrizpenak, tasen igoerak-, **unibertsitateetatik langile klasearen milaka ikasleren kanporaketa suposatuko du** , ezingo baitute masterra ezta gradua bera ere ordaindu.

Graduen ikasketak amaitzea lortzen duten ikasleek **balore txikiko titulu bat** eskuratuko dute, lan merkatuan esplotazio gehiagorako ateak irekiko dituena.

Irakasleriari ere eragingo dio neurri honek, **unibertsitate askotan kaleratze berriak planteatu daitezke**-eta; 3+2arekin ikasgaiak, kurtsoak eta baita karrera osoak deuseztatzearen ondorioz.

Burgesiak neurri hau sustatzen du ziurtatuz ikasketa planak homogeneizatuko direla Europarekiko, baina egia desberdina da oso: **Europar Batasuneko eta Goi Mailako Hezkuntzaren eta Ikerkuntzaren Europar Espazioan -non EBtik kanpoko herrialdeak ere dauden- 3+2a ezartzen duten herrialdeak nahiko urriak dira.** Alemanian bertan ere ez dago zabaldua.

*Domènec Merino*

3+2RIK EZ!

Hezkuntza publikoaren aurkako erasoak gelditu



[ Unibertsitateetatik langile klasearen milaka ikasleren kanporaketa suposatuko du, ezingo baitute masterra ezta gradua bera ere ordaindu. ]

Associació Estudiantil Popular-eko ikasleak
2014ko urria




# APE elkartea Valentzian aurrera doa geldiezinik

**Associació Popular Estudiantil-ek urtebete baino gehiagoko garapena darama gainean. Zer egin nahi duen eta zer egiten duen azalduko dizugu artikulu honetan**

Associació Popular Estudiantil (APE) valentziar ikasleen beharretatik jaio zen, **jatorri langile eta herrikoia duten ikasleen eskubideak defendatzeko sindikatua sortzearen beharretik,** batasuna sustatzen duena Estatu mailako ikasle sindikatu batean, borrokak gidatu eta batu ditzan. **2013ko urriak 24ko ikasle greba** baino lehenago sortu zen, eta greba horren bitartez bere burua ezagutaraztera eman zeun arrakasta handiarekin.

APE **sekzio sindikaletan antolatzen da,** hau da, ikastetxe bateko ikasle desberdinek sekzio sindikal bat osatzen dute beraien ikastetxean jarduteko. Era berean, badira sekzioak bere barnean beste sekzio batzuk barnebiltzen dituztenak delegatuen bidez behetik gora aukeratuak. Amaitzeko, arduradun orokor bat dago, web, agitazio, maketazio eta finantza arduradunak daudelarik ere. Antolakuntza **modu hau ez da kasualitatea, modu asanbleario batean antolatzeko saiakeraren porrotetik dator,** non asanbladan denek dute ahotsa baina beti berdinek parte hartzen duten.

*Gaur egun,* ***APEk 9 institutuetan eta 2 unibertsitate publikoetan dauka presentzia Valentzian***

Gaur egun, **APEk 9 institutuetan eta 2 unibertsitate publikoetan dauka presentzia Valentzian.** Institutuetako ikasleak antolatzea errazagoa dela ikusten dugu bi arrazoirengatik:

- Jatorri langile eta herrikoia duten gero eta ikasle gutxiagok ordaindu dezakete unibertsitatea.

- Valentziako ikasle sindikatu gehienak unibertsitatean soilik daude, ikasle unibertsitarioak sigla desberdinen kopuru handi batzuen elkarren arteko borrokan jarriaz. Hau ez da bigarren hezkuntzan eta Lan Heziketan jazotzen.

Duela urte bat baino gehiagotik aitzina, **APEk koordinazio bat mantentzen du Estatuko sindikatu askorekin, Kataluniako FEU edo BI-Mrekin esaterako.** Koordinazio honek beharrezkoa den eta gero eta gertuago dagoen helburu argi bat dauka: **Estatu mailako ikasleen sindikatu baten sorrera.**

*Rubén Muñoz*

# Oinarrietatik sustaturiko greba

**Igaro den otsailak 26an agerian geratu zen ikasleriaren indarra oinarrietatik antolatzen denean zein indartsua den. Ez Ebk, ezta 3+2 bezalako dekretuek ere, ezin dute ikasleria gelditu.**

Zergatik da greba hau berezia? Zerk eragin du izan duen sekulako arrakasta, alderdi asko hauteskundeetan soilik pentsatzen ari diren honetan?

Greba hau **2014ko azken hilabeteetan prestatzen hasi zen** Santiago de Compostelako Unibertsitateko asanbladetan, aurrekontuen murrizketen eta liburutegiko zerbitzu urriei aurre egiteko. Jakinik beste ikastetxe askok arazo komuna dutela, eta beraien esku zegoela euren eskubideen alde zerbait egitea, harremanak sendotzen hasi ziren beste ikasle erakundeekin.

Honela, abendu amaieran greba deialdia publiko egin zen, **dozena bat ikasle elkarte eta asanblada baino gehiagok sinatua,** Galiziako beste hiri eta herrietara zabalduz, ikasleria osoari deituz euren aldarrikapen propioekin batu zintezen. Geroago, **Madril, Bartzelona, Zaragoza eta beste hiri handi askok bat egin zuten deialdiarekin.** Deialdi honek, beraz, aurrera-pauso ikaragarria suposatu du dinamika kaltegarriak gainditzeko: mugimenduaren errealitatearengandik urrun dauden goi-karguen deialdiak, errealitate desberdinengandik urrunduriko proposamen maximalistak, beraien alderdien interes instituzionalen arabera eginiko egutegiak eta honelako iruzur guztiak **gainditzeko aldarrikapen zentral batekin: 3+2ren aurkako borroka.**

*Greba hau 2014ko azken hilabeteetan prestatzen hasi zen Santiago de Compostelako Unibertsitateko asanbladetan, aurrekontuen murrizketen eta liburutegiko zerbitzu urriei aurre egiteko*

Ikasleria galiziarraren adibideak irakatsi behar digu ikasle mugimendu aktibo bat eraiki daitekeela, bere helburu eta indarrez kontziente dena, zuzendari oportunisten odol-berokeriarik gabe. Eta **hauteskunde urtean borroken atsedenari dei egiten dietenei**, esan behar diegu ikasleriak oraindik borroka garrantzitsu asko dituela aurretik, hezkuntza berri baten eraikuntzaren bidean.

*Antón Ferreiro*

Galizian antolaturiko ikasle manifestazioa hezkuntzan egindako murrizketen aurka




Alderdik Komunistak antolaturiko mitina Palafox Zineman (Madril), urtarrilaren 24ean



# Alderdi Komunistak Palafox Zinea bete du langile mitin batean

**Borrokak batu garaipenak antolatzeko" kanpaina urtarrilaren 24ean bukatutzat jo zen langile kolektibo borrokalarienen parte-hartzea izan zuen mitin batean.**

Urtarrilaren 24eko larunbatean PCPEk antolatutako ekitaldi oso garrantzitsu bat aurrera eraman zen: langile klasea protagonista zen mitin bat, Estatu guztiko **sekzio sindikal desberdinen agurrarekin** kontatuz, baita beste kolektibo askoren presentziarekin, zeinak zuzenean parte hartu zuten interbentzio desberdinekin.

Palafox zinearen edukiera guztiz bete zen langilez, eta gazteak ere ekitaldi klasista garrantzitsu honetan egon ziren. Ekitaldi honek **Alderdi Komunistak eta Gazteria Komunistak egunero lantoki desberdinetan** garatzen ari den lana materializatzea ahalbidetu zuen. Minerplan edo Cerredoko meatzarien gatazkak babestuz, antolatuz edota zuzenduz. Gainera Euskal Herriko Laminaciones Arreguiko ELA eta LABeko lagunen interbentzioa ere izan genuen bertan, baita Madrilgo Coca-Cola enpresako CCOOeko kideena ere, eta ezin gaitezke ahaztu Gran Canariako Mayako Enpresa Batzordearen interbentzioaz, bertako gatazkan Alderdiko eta Gazteriko militantzia parte hartzen ari delarik.

*Soilik antolaturiko eta bere indarrarekiko eta paper historikoarekiko kontzientzia duen langile klase batek amaitu dezake esplotazio, sarraski eta gerra sistema honekin*

Lagun guzti hauek **lantoki bakoitzean antolatzeko beharra** azpimarratu zuten, egunetik egunera geroz eta gehiago ERE-en, ordaindu gabeko lan-orduen hazkundeen, soldaten beherapenen eta abarren bitartez eginiko esplotazioaren bidez ito nahi gaituen enpresariaren aurkako borroka azpimarratu zuten. Langile klaseak duen tresna hori artikulatzeko beharra ere azpimarratu zen, solidaritatea den tresna hori hain zuzen. Borrokak batzen dituen, indarrak lotzen dituen eta klase etsaiaren aurka ukabil bakar baten moduan kolpatzea ahalbidetzen duen solidaritate aktibo bat, aurrera daramagun borroka partzial bakoitzean garaipena antolatzeko.

CJCko idazkari nagusia den Sócrates Fernández eta PCPEko idazkari nagusia den Carmelo Suárezen interbentzioekin amaitu zen ekitaldia, gaur egun dugun marko orokorrari buruzko azterketa batekin. Kapitalismoa bere azkeneko aldian dago eta **soilik antolaturiko eta bere indarrarekiko eta paper historikoarekiko kontzientzia duen langile klase batek amaitu dezake esplotazio, sarraski eta gerra sistema honekin, g**obernu burgesa suntsitzeko eta gizarte sozialista eraikitzeko.

*Álex Sanz*

# Madrid Río eta Coca-Cola, borroka bakarra da

**Negu honetan zehar, Manzanaresen inguruetako eta Puerta del Soletik gertuko egunsenti hotzetan, lekuko izan gara nola langile batasuna eraikiz joan den solidaritatearen bidez.**

Viaria Garbiketa Publikoko Langile Batasunerako Komiteko (LBK/CUO) lagunen bidez, PCPEk Madrid Ríon sortzen ari zen gatazka ezagutu genuen, berehala posizioak hartuz eta langileak erasora jotzera deituz. **Coca-Cola eta Madrid Ríoko lagunen parte-hartzea LBKren Asanblada batean, bi borroken batasunerako lehen urratsa izan zen.** Madrid Ríoko lagunak Coca-Colako langileekin batera Madrilgo erdiguneko mobilizazioetara joaten hasi ziren. Astindu baten moduan, Coca-Colako gatazka erreferentzia gisa hartu zuten Madrid Ríoko lagunek eta multinazionalaren produktuen aurkako boikota lorezainen borrokaren parte izatera pasatu zen.

**Greba Mugagabeko lehenengo egunean, Coca-Colako lagunen presentziak eragin ikaragarria izan zuen** grebaren jarraipenerako eta %98ko geldialdirako. Hortik aurrera, Coca-Colako espartarren presentzia Madrid Ríoko deialdietan normalizatu egin da, honako lema honetan sintetizatuz: **"Madrid Río eta Coca-Cola, borroka bakarra da".** Nola ez da hala izango borroka hauek langile klase osoaren borrokaren bi destakamendu baldin badira? LBKen interbentzioak ere beste solidaritate mezu asko iristea erraztu zuen.

Madrid Ríoko greba amaitzear zegoenean beste borroka fase batekin hasteko, jada EREa exekutatuta zegoelarik, **fabrikaz kanpoko langile batzuen Fuenlabradako Coca-Colaren fabrikaren aurkako erasoaren berriak harritu egin gintuen, patroiaren piketeek babesturik,** fabrika eraistearen helburuarekin, honela enpresak ez zuen pertsonala berriz hartu behar. Espartarrek sendo erantzun zuten berriz, soilik beraiek ekoizten jartzen dituzten makinak babestuz.

Patronalaren eraso berri honen emaitzak atxilotu bat eta hainbat zauritu izan ziren Baita herri langilearentzako lezio bat, **patronalak bere arauak apurtzen ditu nahi duenean eta edozein modutan.** Beste kla-

*Coca-Cola eta Madrid Ríoko lagunen parte-hartzea LBKren Asanblada batean, bi borroken batasunerako lehen urratsa izan zen*

se solidaritate adibide bat, Madrid Ríoko lagunak Coca-Colaren fabrika babestera agertu zirenean beraien Coca-Colako lagunekin batera.

Patronalarentzako mezua: **baturik indartsuak gara, antolaturik garaiezinak.**

*Alberto Colomo*


Madrid Río eta Coca-Colako langileak baturik Madrilgo manifestazio batean




# Zein da **nominaren erabilgarritasuna?**

*Nominak ezezagunak bilakatu dira gazte langileentzat. Askok ez dute inoiz baten bat jaso, eta bitartean beste batzuek ez dakite zertarako balio duten. Kotizatu gabeko lanak enpresariaren aurrean babesgabe uzten gaitu.*

Nomina langilearentzako beharrezko tresna da, izan ere bertan agertzen da gure soldataren banaketa. Enpresaria **nomina ematera behartuta dago** hilabetero, astero edo egunero, lanaldiaren arabera. **Bi parteek firmatu behar duzue,** eta enpresariak nomina emateari edo ordaintzeari uko egiten badio, epai baten aurrean erreklamatu leikezu.

Erabilgarritasunetako bat PFEZarengatik eta Gizarte Segurantzaren kuotengatik zenbat diru atxikitzen diguten jakitea da, baita **gure soldata zein kontzeptuk osatzen duten (soldata finkoa, plusak, aparteko ordainsaria, etab.)** jakin eta hauen ordainketa edo ordainketa eza egiaztatu.

Nominak lau atalez osatuta daude:

- **Datu informatiboak:** Nomina baliozkoa izan dadin enpresaren eta langilearen datuak izan behar ditu: izena, IFK/NAN, kategoria profesionala, lanpostua, dagokion hilabetea, etab.

- **Sortzapena:** Bertan oinarrizko soldata azaldu behar da (hau oso garrantzitsua da, izan ere, adibidez, langabezia kotizatzeko oinarri da) soldata osagarriekin batera (lan eraginkorra ordaintzen dituzten horiek, aparteko ordainsaria adibidez). Soldataz kanpoko osagarriak (lanaren kostua ordaintzen dutenak, garraioaren plusaren modukoak) atal honetatik kanpo geratuko dira.

*Bi aldeek sinatu behar duzue, eta enpresaria ez baldin badago prest nomina emateko, edota ordaintzeari uko egiten badio, epaitegi baten aurrean erreklamatu dezakezu*

- **Atxikipenak eta kenkariak:** Atal honetan enpresariak eginiko kenkariak azaldu beharko dira: zergen eta Gizarte Segurantzaren ordainketak. Beste kontzeptu gehigarriak ere azaldu daitezke, adibidez enpresaren pentsio plan deribatu bat.

- **Laburpena:** Azken atala gainontzeko dokumentuan azaltzen diren zifra garrantzitsuenen laburpen bat da. Hemen determinatzen dira Gizarte Segurantzarako kotizaziorako oinarriak.

Azkenik, esan beharra dago **kotizatu gabeko lanak enpresariaren aurrean babesgabe uzten gaituela,** obligazio formalik egon ezean ez baitizkigu nominarik emango, ezta gure lan-harremana ziurtatuko duen inolako dokumenturik ere.

Gainera, kotizazio faltak eta gero eta urrutiago dagoen erretiramendu adinak **enpresan gure egoera geroz eta gehiago erregularizatzea exijitzen digu**

*Luis Muñoz Gutiérrez*

# **Prestakuntza kontratuak,** *azkenean, praltikak dira guztiontzako*

Praktikak ez dira soilik ikasleentzako, FP edo unibertsitate titulurik ez duten langileek ere egin ditzakete. Horretan datza **ikasketarako eta prestakuntzarako kontratua. 16 eta 25 urte bitarteko gazteek** egiten dituzte (eta langabezia %15a baino baxuago egon arte 30 urtetik beherakoek ere egin ditzakete), betiere gazte hauek praktika kontratuetarako eskubiderik ez badute, baina berez, oso antzekoak dira bi kontratu hauek: **gutxiago kobratzen dute** (gehienez soldata osoaren %75 edo %85a –lehenengo urtean-), **baldintza okerragoak dituzte eta iragankortasunean oinarritzen dira** (1-3 urte bitarteko iraupenak).

Lan-erreforma desberdinek kontratu hauek babesten dituzte, zeinak minusbaliotasunen bat duten pertsonekiko murrizketa gehiago dituzten, edota ikaslea lan-kurtso batean baldin badago.

*Kontratu mota hauek EBK onetsitako Gazte Bermarako Planarekin sustatu dira, aurreko urtetik Espainian ezartzen hasi zirelarik.*

Gainera, **enpresak zenbait etekin lortzen ditu,** prestakuntza orduak enpresari ordaintzen zaizkiola nabarmenduz. Gainera Gizarte Segurantzari ordainketak egiteko abantaila ekonomikoak ahalbidetzen zaizkio. Kontratu mota hauek EBk onetsitako Gazte Bermarako Planarekin sustatu dira, aurreko urtetik Espainian ezartzen hasi zirelarik.

Honen logika ondorengo hau da: **langileak lanaldi "normal" bat egiten du eta honen arabera kobratzen du, baita prestakuntza zati bat, honengatik ordaintzen ez duelarik** (baina bai enpresak, zuzeneko laguntzen edota desgrabazioen bitartez). Lanaldia ezin daiteke izan %75ekoa baino gehiagokoa lehen urtean eta %85ekoa bigarren urtean.

Kontratu mota hauek ez dute soilik langile hauen lan-baldintzen okerragotze bat ekartzen, izan ere, **kasu askotan zerbitzari edo kutxazain postuetarako honelako kontratuak sortzen dira,** aurretiko ordu teorikoen beharrik ez dutenak eta, beraz, euren lankideek egiten duten lan berdina egiteko gazteak kontratatzen dituzte soldata eta baldintza kaskarragoetan.

Honek ere gainontzeko langileengan eragina badu, **lan-eskubideak galtzea onartzen ez badute mehatxuak jasotzen baitituzte,** enpresariak prestakuntzaren bidez kontratatu baitezake, errentagarriagoa dena. Honek eragin kaltegarria du batez ere gutxi espezializatutako lanetan, izan ere langile aldaketa iraunkorrak produktibitateari gutxiago eragiten dio.

*Ana Escauriaza*




# 30 urtetako historian zehar eginiko gure *proposamen sindikala*

*Gure sorkuntzatik, CJCk PCPErekin bat egin du klase sindikalismo baten aldeko borroka egiteko beharrean, Estatuko langileen eskubideak defendatzeko gai izango den sindikalismo baten alde.*

1985ean izan zen CJCk PCPErekin batera **1985eko ekainaren 20ean bete zen greba orokorra** defendatu genuenean. PCPEk urtebete eta erdiko bizitza zuen, eta CJCk hilabete eskas batzuk besterik ez. **CJC klase sindikalismoa babestuz jaio ginelaren** froga goiztiarra, langileok patronalaren aurrean defendatzeko tresna gisa den sindikalismoa. Arrazoi hau izan zen **1988ko abenduaren 14ean egon zen beste greba historiko bateko antolakuntzan** parte hartzera bultzatu gintuena, gure klasearen garaipenarekin amaitu zena, PSOEri atzera eginaraziz langileen aurkako bere planetan.

**"Comisiones Obreras" 1976ean bere sorrera "ofizialera" iritsi ziren,** berrogeita hamarreko hamarkadan hasi ziren langile gatazka askoren esperientzia ugari pilatuz bere historian. Gaur egun, lehendabiziko langile komisioen sorkuntzatik mende erdia igaro ondoren, zeinak langile asanblada gisa sortu ziren euren aldarrikapen zehatzei aurre egiteko, CJCk hasierako borroka izpiritu hori defendatzen dugu, lantokietako langile batasunarekin batera. Egia da gaur egun errealitatea desberdina dela, **bi zentro sindikalekin, non bertako kupulak oligarkiarekin elkarlanean dabiltzan eta non hogeita hamar urteetan zehar traizioaren eta paktuen logikaren espiralean sartuta dauden;** baina baita ere sindikatu atomizatu ugariren presentzia daukagu, zeintzuk mugimendu sindikala berreraikitzeko estrategia amankomun bat ez duten, langile klasearen batasuna berreraikitzeko beharrezkoa izanik klase etsaiari aurre egiteko egitura batetan oinarrituta.

*Lantoki bakoitzean LBK bat sortzearen gure proposamenarekin, lehendabiziko Langile Batzarrak sortuarazi zituen izpirituaren berreskurapenaren alde apostu egiten dugu*

*1985ean CJCk PCPErekin batera greba orokor baten deialdia defendatu genuen, azkenean greba 1985eko ekainaren 20ean aurrera atera zelarik*

LBK bat lantoki bakoitzean eraikitzeko gure proposamenarekin **lehendabiziko Langile Batzordeak sortzea ahalbidetu zuen izpirituaren berreskurapenaren alde** apostu egiten dugu. Klase antolakuntza eta batasuna lantoki bakoitzean, errealitate zehatzaren atomizazio sindikalaren gainean arreta ipiniz, baita honek eragindako klase batasunaren dispertsioa sindikatu desberdinetan. Gaur egun gazte komunistok dugun lana ondorengoa da: lantoki bakoitzean egongo den zeharkako egitura honen eraketan lagundu, lehendabiziko Langile Batzordeak eraikitzen lagundu zuten hainbat gazteen motibazioa gaur egungo gazteriak dugun motibazio berbera baita, gaur egungo lan prekarietateari aurre egiten diogun bitartean. Ongi zioen Madrilen 1966an idatzi zen dokumentu horrek: "klase borroka baldintzatzen duen eta sortzen duen sistema kapitalista batek" sortutako prekarietatea hain zuzen. Gaur, atzo bezala, gure helburua kontraerasoa antolatzea da, eta **LBK-k langile klaseak garaipena lortzeko antolaketa tresna bilakatzea**.

*Roberto Guijarro*



Mordaza-legearen aurka: herri eta langile borroka!




# Hiritarren Segurtasunerako Legea, protesten ordainetan errepresio gogorragoa

**Langile klasearen antolakuntzaren aurrerakadak izututa, burgesiak gure protestak geldiarazi nahi ditu legedi berriez baliatuta eskubide zibil eta politikoak murriztuz.**

**Harreman zuzena dago delitu mota eta klase sozial jakinen artean.** Ogasun Publikoaren edota Gizarte Segurantzaren kontrako delituak, kapital zuriketa eta, orokorrean, delitu ekonomiko gisa ezagutza ditugun horiek, burgesiak egiten ditu gehienbat. Sarritan egin eta gutxitan zigortu. Aldiz, autoritatearen kontrako delituak, desordena publikoak, lesioak edo lapurretak langile klaseak egiten ditu normalean.

***Ordena Publikoaren Kontrako Delituen atala deigarria da oso,** honen arabera erresistentzia pasiboa autoritatearen kontrako atentatu izatera pasako baita, autoantolakuntza eta talde-ekintzak, **baita esparru pribatuetan egindako aldarrikapen baketsuak ere zigortuak izango dira aurrerantzean***

Hiritarren Segurtasunerako (segurtasun faltarako) Legeak edo Isilarazteko Legeak zigorrak gogortzen ditu orokorrean, Kartzelaldi Iraunkor Berrikusgarria (bizi osorako kartzela zigorra alegia) ezartzen du, aurrekari penalik uzten ez zituzten faltak (delituak baino arinagoak) delitu bihurtzen ditu eta zigortuak izatera pasako dira, spray batekin pintada huts bat egitea adibidez. Ogi barra bat lapurtze hutsa delitu izatera pasako da. Delitu izatera pasatzen ez diren falta bakanak bide administratibotik kudeatuko dira, eta gogora dezagun bide hori Tasa Legearen ondorioz garestiagoa dela gaur egun. Bi urtetik beherako zigorrak bertan behera utzi ahal izateko erantzunkizuna zibila ordaindu beharko da eta ordainketa konpromezua sinesgarria izatea. **Hau da, delitu berdinaren aurrean aberatsak ordaindu eta zigorra galtzen du eta pobrea kartzelara doa.** Era berean, delituen preskripziorako eta aurrekari penalak ezabatzeko epeak luzatzen dira.

**Ordena Publikoaren Kontrako Delituen atala deigarria da oso,** honen arabera erresistentzia pasiboa autoritatearen kontrako atentatu izatera pasako baita, autoantolakuntza eta talde-ekintzak (kontzeptu oso generikoetatik), **baita esparru pribatuetan egindako aldarrikapen baketsuak ere zigortuak izango dira aurrerantzean** (esate baterako, enpresa egoitzetan egindako langile kanpaldiak).

Klase borrokaren bitartez ekonomikoak ez diren eskubide asko konkistatzen dira. **Orain, protesta egin ez dezagun lapurtu nahi dizkiguten eskubide hauek borroka eta odolez izan ziren irabaziak, zortzi orduko lanaldia edota hitzarmen kolektiboak bezalaxe.** Gure protesta eta borrokak klase gisa antolatzeko dugun tresnak dira eskubideok.

Hiritarren Segurtasunerako Legearen kontra borrokatzea beharrezkoa da Langile klasearen borroka politikoa behar bezala gauzatzeko, subjektu politiko gisa gure antolakuntza zailtzen duelako.

*Pedro Pérez*

# Zer dago islamiar integrismoarekiko beldurraren atzean

**Langile internazionalismoa ezberdintasun erlijioso eta etnikoez gainetik egon behar da eta langile klasearen nazioarteko batasuna defendatu behar du**

2001eko iralaren 11tik, Europa eta Iparamerikako biztanleria **"yihadismo" delakoak mehatxatuta sentitzen da.** Badirudi fenomeno honek ez duela telebista pantailetatik nola paperezko edo interneteko egunkarietatik ihes egin nahi, izatez, Mendebaldean gertatzen den atentatu bakoitzaren ondotik komunikabideen aldetik geroz eta arreta handiagoa jasotzen du.

*Erakunde honek eta borroka beroa , non langile digu kenduko gure kultur aurreiritziak hasteko*

Talde hauei dagokionez zerbait egia bada Europa eta Iparamerikako biztanleriarengan sortzen duten beldurra da, eta argi dago **beldurra zein segurtasun falta ikaragarri onuragarriak direla... baina ez langile klasearentzat.** Onuragarriak dira alderdi xenofoboentzat -musulman populazio zabala dagoen leku horietantxe- irabazi politiko nabariak eskuratzen baitituzte, beldur horretaz baliatuz eta musulman oro balizko terroristatzat joz; estrategia horiez baliatuz langile klasea zatitzea lortzen dute, klase borrokan ondorio latzak eraginez. Beldurra eta segurtasun eza horiek errentagarri dira ere, bistan da, Mendebaldeko sasi-demokrazia eta askatasunaren izenean **suntsitutako lurraldeetan, konpetentziarik gabeko merkatu berrietan, arazorik gabe aberasteko, ezartzen diren enpresentzat.**

Komunistok, egoera honekiko, oso bestelakoa den ikuspuntu bat partekatzen dugu. **Gure jarduna markatzen duen ardatz nagusienetariko baten gisa, langile internazionalismoaren bandera goratzen dugun unetik,** pertsonen erlijioak edo jatorri etnikoak ez gaitu kezkatzen. Ezberdintasun horiek anekdota hutsa direla deritzogu, eta gizabanakoen arteko benetako zatiketa sistema kapitalistak sortzen dituen klaseetan datzala. Prozesu iraultzailearen gidari gisa, alderdi komunistaren eta bere gaztediaren goiburua **proletarioen batasuna da,** elkarren ondoan, **antolatu eta borrokatzeko** klase zapaldu gisa pairatzen dugun zanpaketaren aurka. **Antolakuntza eta borroka honen itzalean alde batera utziko ditugu langileok** sistema honengandik jasotako **aurreritzi kulturalak**- baita erlijiosoak ere- eta kapitalismoaren ondorioz egun pairatzen ditugun diskriminazioak bertan behera uzteko lehen urratsak emango ditugu.

*Reguera*

ISIS-en tropa armatuak basamortua konboietan gurutzatuz






Antolakuntza eta Finantzen IV Biltzarra, non CJC-k atzerrian dauden gazteei antolatzeko dei egiten dien ebazpena onartu genuen



# Espainiar gazteen antolakuntza atzerrian

**Gazte asko atzerrira migratzen dira lana bilatu edo euren ikasketekin jarraitzeko eta, kanpoan dauden arren, komuniston proposamena eurengana zuzentzen da ere.**

Iazko urtearen bukaeran, PCPEk erabaki zuen **atzerrian zeuden Alderdiko militanteek erakundea egituratu beharko zutela euren bizitoki berrietan.** Iazko urriko Antolakuntza eta Finantzetako IV. Konferentzian Gazteriak aipaturiko erabaki hori berretsi zuen. Geroztik, GKK/CJC mundu guztiko hirietan borrokarako postu bat bermatuko duten lubakiak zulatzen hasteko lanean dihardu.

Zaila da zehaztasunez zenbatzea zenbat izan diren alde egin behar izan duten gazteak, azken hamarkadetan Espainiara iritsitako etorkinen kantitatearekin konparatuta, kantitate mugatu xamarra baita. Hala eta guztiz ere, espainiarren irteera, apika, masiboa ez izanagatik **ere ezin daiteke ukatu handituz doan fluxu bat dela**. Nabaria da Edimburgh bezalako hiriek, egun, 30.000 espainiar baino gehiago dituztela. Irakurleari, iragan mendean zehar, erabaki berdina hartzera behartuak egon ziren senitarteko edo ezagunen istorioak etorriko zaizkio gogora. Une horretan ere, Alderdi Komunistak bere burkideak bertan behera ez uzteko erabakia hartu zuen.

1987tik aurrera ikasle askok baliatzen dituzte **Erasmus bekak** euren formakuntza hobetzeko. GKK/CJCk ere ikasle hauengana zuzentzen du proposamen hau, azken batean ikasketa hauen ondotik ikasleok lan merkatura jauzia egin eta bertan esplotatuak izango diren langileak bilakatuko baitira.

PCPEk nola bere gazteriak **ez duen Espainiatik kanpoko erakunde iraultzaileak ordezkatzea nahi,** bere militanteak uneoro Alderdiaren zerbitzura lanean egoten jarraitzea baizik, dauden lekuan daudela ere euren herrikideekin batera kapitalismoaren eraispenerako lanean jarrai dezaten. Aurrerakada hau Gazteriaren indarraren eta PCPEren proiektu politikoarekiko konpromezuaren baieztapena baino ez da. Kontziente gara antolakuntza zabalduz eragina handitu eta gainerako erakunde komunistekin existitzen den harremana indartzen dela.

Bidegabekeri baten aurrean besoak gurutzatuta geratzeak bidegabekeri hori errepikatzea baino ez du ekarriko. Gazte Komunisten Kolektiboek emigraturiko espainiarrei eskua luzatzeko erabakia hartzen dute, eurei borrokarako tresnak eskaintzeko. **Iragan urritik GKK/CJC Espainian nola atzerrian borrokan dabilen ukabil indartsu bat da.**

*Eric Rodríguez*

---

# Elkartasun Misioa Venezuela Bolibartarrera

**Otsailaren 20tik 28ra bitarte, GKK/CJCko ordezkaritza batek honako elkartasun misio honetan hartuko du parte, Venezuelako errealitatea bertatik bertara ezagutzeko.**

Gazte Komunsiten Kolektibook aurrean dugun nazioarteko gertakari garrantzitsua **(MGDF) Munduko Gazteria Demokratikoaren Federakundeak** antolaturiko **Venezuelarako Elkartasun Misioa** izango da, aurtengo otsailaren 20tik 28ra arte gauzatuko dena eta zeinera GKK/CJCk ordezkaritza bidaliko baitu.

*Venezuelako gazteek bizi duten egoera bertatik bertara ezagutu eta, era berean, munduko gazte mugimendu antiinperialistaren elkartasuna adierazteko helburuarekin*

Eraso inperialisten intentsifikazioaren aurrean, Vietnamen buruturiko, MGDFren azken Kontseilu Orokorrak, nazioarte mailako elkartasun ekimen hau onartu zuen, **Venezuelako gazteek bizi duten egoera bertatik bertara ezagutu eta, era berean, munduko gazte mugimendu antiinperialistaren elkartasuna adierazteko helburuarekin.**

GKK/CJCk, MGDFko ordezkaritza honetan parte hartuz, hainbat nazioarteko seminariotan izango du presentzia, bilkurak egingo ditu erakunde sozialekin eta indarkeriaren gorakadaren biktimekin, baita gazte eta ikasle erakundeekin ere. Hortaz gain, **gure erakunde-laguna den Venezuelako Gazteria Komunistarekin** dugun aldebiko harremana eta konpromezua indartu ahal izango dugu.

*Ester Cubero*

# Bostak aske daude!!

**Borroka internazionalista luze baten ostean Kuban dira berriz bost Antiterrorista Kubarrak.**

Asko entzun da azkenaldian Kubako estatubatuar presoen askatzearen inguruan, "castrotar erregimenaren" biktimatzat aurkeztu izan zaizkigunak. Euren omenez, komunikabideek euren kamerak atera zituzten, gaizkile hauei martiri itxura eman nahian. Hala eta guztiz ere, **Iraultzak aurrera jarraitzen duela** izkutatu nahi digute, 50 urtetan zehar Estatu Batuen eraso, boikot, jazarpen, atentatu eta erahilketak jasan behar izan dituen arren.

Honako eraso hauek sahiesteko asmoz, **Kubako gobernuak estatubatuar erakunde kontrairaultzaileetan agente bereziak infiltratzea erabaki zuen,** erakunde horien gehiengoa Miamin kokatua zegoelarik. Estatu Batuek agente horietatik bost atxiki zituzten eta, asmatutako delituak egotzita, 15 urte luzez giltzapetu zituzten. Bidegabeko kartzelaratze hauek, baina, ez ziren komunikabideetan agertu izan.

*Honako eraso hauek sahiesteko asmoz, Kubako gobernuak estatubatuar erakunde kontrairaultzaileetan agente bereziak infiltratzea erabaki zuen, erakunde horien gehiengoa Miamin kokatua zegoelarik*

Kubako gobernuaren eta Estatu Batuen arteko akordio baten ostean, gaur, azkenean, Bost Antiterrorista kubatarrak aske daude. Inongo zalantzarik gabe, honako hau Espainiatik eta beste hainbat herrialdetatiko, inperialismoaren aurkako eta Kubatar Iraultzaren aldeko, **internazionalismo proletarioari eskerrak lortu ahal izan da.**

*Rafael Medina*




# Gazteria Komunistaren hastapenak

I. Mundu Gerra eta 1917ko Urriko Iraultza izan ziren nazioarteko mugimendu komunistaren hasiera ekarri zuten mugarri nagusiak. 1919ko martxoan, errusiar guda zibila bere horretan zegoela,

*Urte horretxen bukaeran bi siglek bat egin eta Espainiako Alderdi Komunista sortu zen*

burutu zen Moskun Hirugarren Internazionalaren edo **Internazional Komunistaren I. Kongresua,** 30 herrialdetik gora etorritako ordezkarien parte hartzearekin.

Itxuraz neutral eta gertakari hauengandik hurrun zegoen Espainian, langile mugimendua ez zebilen nagikeritan. Urte horietan zehar, hamaika mobilizazio, greba eta borroka eraman ziren aurrera, nagusiki **CNT eta UGTren** zuzendaritzaren pean. Hots, nazioartean ematen ari ziren gertaeren testuinguruan, Espainia ere haztegi bikaina izan zen zenbait eztabaida martxan jartzeko une horretara arte langile joerako alderdi bakarra izan zen **PSOE**ren baitan.

1919tik PSOEren barruan eztabaida sutsuak izan ziren Internazional Komunistara batzearen aldekoen eta kontrakoen artean. Ohiz kanpoko kongresu bat prestatzen ari bazen ere, gazteria sozialisten baitako sektore batek aurrera urrats bat ematea erabaki eta **1920an Espainiar Alderdi Komunista sortu zuten.** Handik gutxira, 1921ean, PSOEko kongresuaren baitako eztabaidak Hirugarren Internazionalaren aldeko tesien aurkako agertu ziren, Internazional Komunistara batzearen aurkako joera nagusitu zelarik 2000 bozka eskasen tartearekin. Ondorioz, **zatiketa berri bat eman eta Espainiar Langile Alderdi Komunista (PCOE) jaio zen.**

Urte horretxen bukaeran bi siglek **bat egin eta Espainiako Alderdi Komunista sortu zen.** Bi alderdi hauetako gazte erakundeekin beste hainbeste jaso zen, elkar bat egin eta Espainiako Gazteria Komunsiten Batasuna sortu zuten. Horrez geroztik, PSOEren oportunismoaren eta mugimendu iraultzailearen arteko distantziamendua nabariagoa bilakatu zen.

Espainiar mugimendu komunistak aurrerakada handia izan bazuen ere, urte benetan zailak izan ziren honako hauek. Alderdi Komunistari atxikiriko gazteria komunistaren lehen urratsetan **antolakuntza garapen eskasa izan zen, gune industrial bakan batzuetan kontzentraturik, Bizkaian batez ere.** Lurralde horietan greba garrantzitsuak jaso izan baziren ere gazteriaren erakundeek ehundaka edo milaka militante baino ez zituen eskuratu. Daturik baikorrenen arabera, 20ko hamarkadan zehar, bai PCEk zein UJCEk ez zituzten 5000 militantetik gora izango unerik honenetan ere.

Egoera hau, hein handi batean, II. Errepublikan zehar ere errepikatuko ziren hainbat elementuren ondorio zen. Arrazoien hauen artean garrantzitsuenetariko bat zera izango zen: **langile mugimendua hainbat sektoretan zatitua zegoela** (komunista, anarkista, sozialista eta katolikoen artean). Ezin dira alde batera utzi, ezta ere, une horretan PCEn nagusi ziren zenbait korronte sektario edo ezkerzale. Gainera, 1923tik 1930era bitarteko Espainiako historia **Miguel Primo de Riveraren diktadura militarrak** markatua egongo zen. Diktadura honek gogorki, kartzelaz nahiz berunez, jazartu zuen langile mugimendua. PCE

*Miguel Primo de Riveraren diktadura militarrak markatua egongo zen. Diktadura honek gogorki, kartzelaz nahiz berunez, jazartu zuen langile mugimendua. PCE bera ere, hamaika kolpe errepresiboren ondorioz, klandestinitatera kondenatua izan zen*

bera ere, hamaika kolpe errepresiboren ondorioz, klandestinitatera kondenatua izan zen, haren zuzendaritza futbol talde baten izenarekin, Oriente FC, kamuflatu behar izan zelarik.

Gazte komunistak izan ziren, hutsegiteak hutsegite eta arazoak arazo, tinkotasun eta dinamismo handienez, bandera gorria defendatu zutenak. II. Errepublikak Espainiara ekarri zituen aldaketek nola Internazional Komunistaren baitan ematen ari zen jira ideologikoak lagunduta, gazte komunistek **jarrera sektarioak alde batera utzi eta 1932an Bullejos zuzendaritzatik alboratzea lortu zuten,** PCEren zuzendaritza José Díaz Ramosen eskuetara pasa zelarik. Era honetan, eta hasiera batean PCEk Errepublika kritikatu bazuen ere, une honetatik aurrera Errepublika Espainiak pendiente zuen iraultza demokratiko-burges gisa ulertu zuen Alderdiak. II. Errepublikarekin batera posizionamendu iraultzaileen aurrerakadarako berebiziko garai historiko bat hasi zen Espainian; etapa hau, Enrique Lísterrek esan zuen bezala, gerrarako benetako eskola izan zen. Egia esateko, PCE eta JSU ez ziren lehen mailako erakunde bilakatuko gerraren hasierara arte, baina, halere, Errepublikaren lehen urteetatik komunisten aurrerakada eta hazkundea nabariak izan ziren. Adibide gisa, **1933ko hauteskundeetan PCEk bere lehen diputatua eskuratu zuen.**

Ezinezkoa litzateke, lerro bakan hauetan, Alderdi eta Gazteriaren erakundeek II. Errepublikan zehar izan zuten garapenaz hitz egitea. Baina gertaera guztien artetik, etorkizunari begira garrantzia handiena izan zuena faxismoaren gorakadak sortzen zuen kezka izan zen. Internazional Komunista 1934tik zegoen **faxismoaren aurrerakadaz kezkaturik, eta kezka** honek eragin zuen Fronte Popularren estrategia martxan jarri izana. **1934ko Urriko Iraultzaren atarian** Internazionalak PSOEk lehenagotik defendaturiko Langile Aliantzetan parte hartzea gomendatzen zion PCEri. 34ko Asturiaseko gertaeren eta hauen baitan komunistek izan zuen parte hartzearen ostean, PCEk bere goranzko joerari jarraitu zion, amnistiaren aldeko kanpainei esker bereziki.

PCEk bere eta langile mugimenduaren segurtasuna bermatzeko ere euren neurri propioak hartu zituzten. 1933an, Modestok eta Listerrek **Langile eta Nekazari Milizia Antifaxistak** sortu zituzten, gazte **komunistek** osatuak nagusiki. Pistolero faxisten kontrako autofendentsa talde hauek, proletalgoaren ejerzitoaren aurrekari gisa sortuak, Madrilen izan ezik garapen nabaririk izan ez bazuten ere, funtsezko tresna izan ziren Alderdi nahiz Gazteria esperientziaz hornitzeko. Aurreko urrats hauei esker, behin gerra hasita, **Bosgarren Erregimendua** bezalako proposamenak planteatzea posible izan zen.

*Baina gertaera guztien artetik, etorkizunari begira garrantzia handiena izan zuena faxismoaren gorakadak sortzen zuen kezka izan zen. Internazional Komunista 1934tik zegoen faxismoaren aurrerakadaz kezkaturik, eta kezka honek eragin zuen Fronte Popularren estrategia martxan jarri izana*

Nazio eta nazioarte mailako testuinguru honetan indar ezberdinen arteko eztabaidak jasotzen hasi ziren, eta hauen ondorioz 1936ko otsaileko hauteskunde aliantza, Fronte Popularra, ahalbidetu zen, baita Gazteria Komunsita eta **Gazteria Sozialisten arteko batasuna ere.** Erreakzioaren alorrean ere mugimenduak ematen hasiak ziren baina, uztailaren 18ko matxinadaren prestakuntzei ekin zitzaiolarik.

***Tinta Roja-ren datorren atalean "Gure Historiari begira" atalarekin jarraituko dugu, hurrengo garaiaz hizketan.***

*Víctor Moreno*

*"Parlamentua enpresari eta bankari handiek osatzen duten klase menderatzailearen dominazio tresna bat baino ez da. Parlamentuaren bitartez, burgesiaren geruza ezberdinek onuragarrien zaizkien neurriak onartzen saiatzen dira."*

# Komunistak, parlamentua eta hauteskundeak

**Azken formakuntza artikuluan azpiegitura eta gainegituraren arteko harremanaz mintzatu ginen. Konzepzio ideologiko honetatik abiatuz, gure baitan hartzen dugu hauteskunde eta erakunde burgesen baitan (legebiltzar, aldundi, udaletxeetan...) parte hartzearen auziaren azterketa.**

Aurreko artikuluan esaten genuen bezala, **oinarri ekonomikoak gainegitura determinatzen du,** gainegiturak oinarri ekonomikoa bera legitimatu eta haren jarduna errazteko funtzioa betetzen duelarik. Parlamentuak nola udal nahiz autonomi erakundeek paper bera betetzen dute.

Hortaz, Leninek "Estatua eta Iraultza" lanean sintetizatu zuen bezala, **parlamentua** enpresari eta bankari handiek osatzen duten **klase menderatzailearen dominazio tresna bat baino ez da.** Parlamentuaren bitartez, burgesiaren geruza ezberdinek onuragarrien zaizkien neurriak onartzen saiatzen dira. Posible da parlamentuaren baitan koiunturazko zenbait erreforma aurrera ateratzea baina, orokorrean, erreforma hauek oso zehatz eta partzialak izaten dira eta, batez ere, behin behinekoak, klase zanpatzailearentzat oztopo bilakatzen direnean berehala ezabatzen baitira.

Zentzu horretan, **parlamentuan herri langileak pairatzen dituen arazoei konponbiderik eman ezin zaiola diogu komunistok.** *"Komunistek egi gordin eta borobila erakusten diete langile masei: errepublika demokratikoa, asanblada konstituziogilea, hauteskunde orokorrak, eta abar, benetan ez dira burgesiaren diktadura baino eta, lana kapitala-*

*Parlamentua enpresari eta bankari handiek osatzen duten klase menderatzailearen dominazio tresna bat baino ez da. Parlamentuaren bitartez, burgesiaren geruza ezberdinek onuragarrien zaizkien neurriak onartzen saiatzen dira*

*ren zanpaketatik askatzeko, bide bakarra dago: diktadura hori proletalgoaren diktadurarekin ordezkatzea. Proletalgoaren diktadura baino ezin dezake gizadiak gezurraren, faltsukeriaren, demokrazia burgesaren hipokrisiarengandik, aberatsentzako demokrazia horrengandik, askatu; proletalgoaren diktadurak baino ezin dezake pobreentzako demokrazia ezarri, hau da, demokraziaren onurak langile eta nekazari pobreentzako eskuragarriak izatea ahalbidetzea. Izan ere, orain, (burges errepublika demokratikoenean ere) onura guzti horiek eskuraezinak dira langileen gehiengoarentzat."*1

Honako hau kontuan hartuta, zein izan behar da komuniston jarrera hauteskunde eta parlamentu burgesen aurrean: kategorikoki errefusatzea edo bertan sistematikoki parte hartzea?

Ez bata eta ez bestea. **Nazioarteko Mugimendu Komunistaren baitako hainbat sektoreren artean izandako eztabaida hau Internazional Komunistak sintetizatu zuen** hainbat erabakiren bitartez, une eta egoera bakoitza analizatu beharko ziren parlamentu horietan parte hartu eta boikoteatzea erabaki ahal izateko.3

Orokorrean esparru burges hauetan parte hartu behar zela onartu zen, "langile klasearen elementu **atzeratuak hezi eta alienaturiko langile masak iratzarri eta ilustratzeko"** tresna gisa ulertu baitziren.4

Ez parte-hartze nahiz boikoterako uneak askotarikoak izan daitezke, baina orokorrean **krisi iraultzaileko eta masen gorakada iraultzaileko** garaiak azpimarratu ziren.

Marko teoriko xume hau kontuan hartu ostean hurrengo galderara pasa behar gara: zein helburu eta metodoekin hartu behar dute parte komunistek parlamentuan?

Lehenik eta behin, edozein borroka iraultzaileren azken helburua izan behar dugu buruan.

Borroka iraultzailea, klase borroka orokorraren baitako modu zehatz bat izanik, klase borrokak baldintzatzen du eta gainera **bigarren maila batetan utzi ohi da masa langileen borrokaren menpe baitago.**

Zentzu honetan, hauteskunde kanpainek **ez dute ahalik eta boto bilketa handiena bilatu behar,** herri langilea gure leloen bidez mobilizatzeko gaitasuna baizik.

Parlamentu politika komunistaren ezaugarriak zeintzuk diren zehaztu beharra dago, **politika oportunistengandik bereizten** gai izan gaitezen.

Parlamentuaren kontzepzio oportunistak **"goitik beherako salbazioa"** du oinarri gisa, bilakaera sozialen baitan langile masek duten papera ukatzen duelarik. Era honetan, euren ahaleginak **parlamentu burgesen baitan erreforma partzialak** lortzera bideratzen dituzte. Erreforma hauek, oso txiki eta behin-behinekoak izanagatik ere, euren garaikur bezala erabiltzen dituzte, hala, euren burua legitimatu eta hurrengo hauteskundeetan botoak ugaldu ahal izateko. Ez dira kontziente herri langileak konkista ditzakeen erreforma bakanak klase borroka amorratuaren ondorio direla, eta ez direla gertatzen gobernu jakin baten ustezko jarrera aurrerakoia kausa.

*Orokorrean esparru burges hauetan parte hartu behar zela onartu zen,* ***"langile klasearen elementu atzeratuak hezi eta alienaturiko langile masak iratzarri eta ilustratzeko"*** *tresna gisa ulertu baitziren*

Borroka parlamentarioaren kontzepzio komunistaren baitan **parlamentua agitazio iraultzailerako tribuna gisa erabiltzen da,** hala, klase kontzientziaren garapena ahalbidetzeko.

Parlamentu ezberdinetatik klase etsaiaren maniobrak salatzen dira eguneroko aspektuak azpimarratuz (kaleratzeak, TTIP bezalako ezkutuko planak, grebak... eta abar), masak bilduz eta lelo iraultzaileen pean antolatuz. Helburu berberari jarraiki, lege proiektuak eta emendakinak aurkezten dira, ez gehiengo burgesak onar ditzan baizik eta erakunde hauen izaera anti-herritarra nabarmentzeko eta begibistan jartzeko. Askotan zaila bada ere, **guztiz derrigorrezkoa da parlamentuko interbentzioetan egia defendatzea,** egi hau oso gordina bada ere, gure helburua ez delako masak limurtzea, baizik eta euren heziketa politikoa eta klase kontzientzia garatzen laguntzea baizik.

Diputatu komunistek ezin dute herri langilearekiko harremana hautsi, masa ekintzetan parte hartu behar dute (grebetan, bileretan, asanbladetan...)

*Liher Calleja*

---

[1] LENIN, V.I., "Democracia" y dictadura. 1919

[2] LENIN, V.I., La revolución proletaria y el renegado Kautsky. 1918

3 Besteak beste: Internazional Komunistako II Kongresuko Ebazpena: "El Partido Comunista y el parlamentarismo" eta Internazional Komunsitako Presidium Zabalduko batzorde beteharazleare Ebazpena: "Las tareas de las secciones de la Internacional Comunista respecto a la política municipal." 1920 eta 1930koak hurrenez hurren.

[4] LENIN, V.I., La enfermedad infantil del "izquierdismo" en el comunismo. 1920

# PCPE datozen hauteskundeen aurrean

**2015 hauteskundez beteriko urte bat da. PCPEk hauteskunde hauei langileriaren ahotsa izatearen kontsignapean egingo die aurre.**

Aurtengo hauteskundeak, bereziki, eskuinera mugitzeko indar oportunisten joerak markatzen ditu. Hau da, langile klasetik geroz eta urrunago dauden sektore sozialetan laguntza bilatzen dute eta geroz eta proposamen posibilista eta pragmatikoak kaleratu.

Joera hau argi eta garbi ikusi daiteke PODEMOS, Izquierda Unida eta "Ganemos" deituriko esperimentu hainbatetan. Hauek langile klasearen interesetatik aldentzen diren diskurtsoak botatzen dituzte, "jendea" edo "herritarrak" bezalako subjektu politikoei so eginez.

*Lan handia egin behar dugu herri langilearen sektore askori PCPE indartsu baten existentzia transmititzeko gai izan gaitezen*

**"Jendea"-rentzat hitz egiten duenak ez du langile klasea eta sektore herritarrentzat hitz egiten, askoz ere multzo handiago batentzat baizik, bai esplotatuentzat bai esplotatzaileentzat. "Herritar"-ei hitz egiten dietenek herritar aberats eta herritar txiroak daudela ahazten dute, eta hauen interesek ez dute parekotasunik. Interes kontrajarriak dituzten sektoreen laguntza bilatzen dutenek, beraz, diskurtso hutsak botatzen dituzte, esplotatua eta esplotatzailea, aberatsa eta txiroa, multzo berdinean sartzeko gai direnak.**

Egoera hauetan, esplotatuak ez ditu kontzientzia iraultzailearen garapenean aurrerapenik egingo, ezingo ditu, eremu ideologiko eta borroka praktikoan, egoeraren benetazko kausa zein den jakiteko beharrezko elementuak eskuratu. Benetazko kausa zein den jakitea beharrezkoa da honen kontrako borrokarako, inork ez baitu ezezaguna denaren kontra borroka egiten. Horrela, esplotatuak esplotatzailearen edo sektore sozialen menpe jarraituko du, zeinak posizio ideologiko definituak dituzten, status quoa mantentzeko helburuarekin, esplotatzailea esplotatzaile jarraitzen izateko helburuarekin. Hau da, kapitalismoa heusteko xedearekin, ez akabatzekoarekin.

**Testuinguru honetan, esan dezakegu PCPE gehiengo sozialaren interesei lehentasuna ematen dien indar bakarra dela,** langileriaren, esplotatuen ahotsa dela. Langileen maila-igoera ekarriko duen kapitalismo baten iruzurrik gabe.

PCPEk ez du nahi langilearen semea bere aitaren enpresaren gerente izaterik. **PCPEk enpresa semearena, aitarena eta langileria guztiarena izatea nahi du, jabetza sozialaren bidez.** Ikuspuntu estrategiko guztiz desberdina da, komuniston ekintzarako taktika definitzen duena, baita hauteskundeen inguruan ere.

**Horregatik PCPE bakarrik aurkeztuko da udal-hauteskunde eta hauteskunde autonomikoetara.** Iraganean hainbat erakundekin egin dugu lan, UPOA (Aguilar de la Frontera) eta ACPT (Torrelavega), adibidez, non PCPEren planteamenduak nabariak ziren. Baina gaur ezin dugu komuniston posizioa beste interesak dituzten erakundeen menpe jarri.

*Soilik Alderdi Komunistaren sendotze organikoa da garaipenaren berma*

Baina PCPEk bakarrik parte hartzeak ez du esan nahi langile sektore aurreratuenera bideratuta dagoenik. Batez ere, esfortzu handia egin behar dugu ahalik eta sektore handienari, PCPE indartsu baten beharra dagoela benetako aldaketan nahi baditugu.

PCPE eta GKK/CJCko militanteen benetako erronka kontzientzia garapen desberdineko kolektiboei zera azaltzeko gai izatea da: komunistok bakarrik izan daitezkeela langileen ahotsa eta soilik Alderdi Komunistaren sendotzeak ekar dezakeela garaipena.

Horretarako ezinbestekoa da gure hitzaldiak ondo prestatzea, posizio aurreratuagoko sektoreentzat **azalpen ideologikoak konbinatu.** Kontzientzia hain garatua ez duten sektoreei ordea, **proposamen eta azalpen sinplegoak azaldu.**

**PCPE eta GKK/CJCko koadroen zeregina nahitaezkoa izango da erronka honetan.** Gure programaren ardatz nagusienak, orain Komite Zentralaren bidez egiten ari direnak, auzo eta udalerri bakoitzeko edukinak izango ditu, gure klaseak komuniston proposamenekin bat egiteko

*Ástor García*


"Jendea"-rentzat hitz egiten duenak ez du langile klasea eta sektore herritarrentzat hitz egiten, askoz ere multzo handiago batentzat baizik, bai esplotatuentzat bai esplotatzaileentzat. "Herritar"-ei hitz egiten dietenek herritar aberats eta herritar txiroak daudela ahazten dute, eta hauen interesek ez dute parekotasunik. Interes kontrajarriak dituzten sektoreen laguntza bilatzen dutenek, beraz, diskurtso hutsak botatzen dituzte, esplotatua eta esplotatzailea, aberatsa eta txiroa, multzo berdinean sartzeko gai direnak.

# Los Simpsons-en ideologia, 25 urteren ondoren

Los Simpsons telesail famatuak ideologiarik ez zuela uste al zenuen?

**Beha dezagun telesaila bere 25 urte hauetan zehar.**

"Nire Homer ez da komunista", dio honen aitak telesailaren elkarrizketa ezagun batean. Baina egia da, Homer eta Springfield-eko herrian bizi den jendea urruti dagoela komunista izatetik. Argi dagoena da, ordea, hauetako bakoitzak ideologia jakin bat duela, artikulu honetan aztertuko duguna.

*The Simpson telesai famatuak ideologiarik ez zuela pentsatzen al zenuen? Aztertu dezagun telesaia bere 25 urtetako bizitzan zehar*

Zalantzarik gabe, telesail honek askotan erakutsi digu beraren inteligentzia, humore azidoa, erreferentzia kulturalak eta kritika sozialak nahastuz. **Bitxia da zein ikuspuntu eman dion Estatu Batuetako langile aristokraziak**- gidoilariak, alegia- **eta, zehazki, sistema kapitalistaren aitzindari eta herrialde alienanteetariko bat den herrialdeko langileriak.**

Telesailak, sistema ekonomikoaren ardatzak zalantzan jarri gabe, **nahieran xehatzen du kapitalismoko langileria, nahiko pertsonaia sorta handiarekin. Baina bereziki Homerrekin, telebistak, alkoholak eta gustoko ez duen lan batek itsuturik bizi dena.** Alienazioaren adierazle gorena dugu hau, inolako konpromezutik aldetzen dena, bere lankideak eskubideak lortzeko borrokan dauden bitartean ogitarteko bat besterik eskatzen ez duena. "Lan egitea ergelentzat da" dio Bartek, eta aitak, bere langile maila gutxietxiz, dio: "arro nago zutaz, nik zure adinaren bikoitza nuen konturatu nintzenerako". Homerren emaztea, **Marge, etxekoandre otzana,** beti senarrarekiko leial, zeinak bere ametsak atzean utzi zituen Bartez haurdun geratu eta ezkondu zenean. Gainera, lana bilatzen duen bakoitzean porrot egingo du.

Bere aldetik, Bartek bere klase mailari uko egiten dio adin gazte batetik, eta **etorkizunerako prestakuntzik gabeko ume gatazkatsua da.** Bere arreba Lisaren antitesia irudi dezake, baina bigarren honek ere bere langile jatorriari uko egiten dio. 8 urteko umeak, liberalismoa eta feminismo burgesaren eredu, **dirudienez bere idealei jarraituz, ez du amore ematen garaipen eta ohorez beteriko bizitza bat imaginatzen, kapitalismoaren baloreei aurpegi on bat jarriz; lehiakortasuna, indibidualismoa eta moral bikotza estaliz.** Pasarte batean, ikusi dezakegu Lisa Estatu Batuetako lehendakari izatera heltzen dela, honek dakarren guztiarekin.

Emakumea beti bigarren planoan dago, ama edo emazte ia denak- Maude Flanders, Helen Lovejoy edo Luann Van Houten-, esplotazio kapitalistaren aurpegi zitalena Burns jaunaren izenean, sistemaren ustelkeria Quimbyren izenean. Smithersen zurikeria jabearen aurrean, Wiggum segurtasun indarren lelokeriaren ordezkari. **Arratsaldero Moeren tabernan edaten dabilen langileriak, ongi definitzen du Springfieldeko Alderdi Komunistako ordezkariari tomateak botatzen dizkion jendea.** "Dardotan aritzea baina hobea da".

*Kevin Álvarez*



# Gomendioak

## *Diska bat...*




***Habeas Corpus – A este lado de la crisis***

Bere 20 urteko ibilbide musikalean ohikoa denez, **Habeas Corpusek** hitz borrokalari eta erreibindikatiboz beteriko LP bat ekarri digu. Beraien aldakortasunari leial, azken diska honetan kantu azkar eta potentetatik (Los Bienpagados) kantu lasaiagoetara pasatzen dira, Riot Propaganda proiektua gogorarazten digutenak. Baita beste hainbat kantu, Cuántos muertos otra vez edo Tú y cuántos más, adibidez

## *Pelikula bat..*

***Claude Berri – Germinal***

**Emile Zola**ren novelan oinarrituz, **Claude Berriren** filmeak XIX mendeko meatzari frantsesen bizi baldintzak erakusten dizkigu. Gérard Depardieuk protagonizatua, Germinal proletalgoa eta burgesiaren arteko gatazka erakusten digun drama historikoa da, beraien interesen ezberdintasun ugariak eta langileen antolakuntzaren beharra kapitalaren erasoen aurka erakusten dizkigu.




## *Liburu bat...*

***Agustín Millares Cantero – El estudiante rojo***

Unidad y Lucha argitaletxearen lehen kalerapenak **Agustín Millares Sall** kanariar poetaren bizipenak kontatzen dizkigu, PC-PEren kide izan zena 1989an hil zen arte. El estudiante rojo-n, irakurlea hainbat gertaera historikotan murgilduko da, Kanarietan Espainiako Alderdi Komunistaren sorrera edota kanariar langile borrokaren hainbat etapa historiko. Irakurleak Kanariar Irletako hainbat sektoretan kontzientzia politikoa sortzera eraman zituen zenbait poema irakurri ahal izango ditu.




*Fernando Puertas eta Aitor Yagüe*



# Gazteria Komunistak musika borrokarako baliabide bihurtzen dugu

Pasa den urtarrilaren 24ean, GKK/CJCk **rap borrokalariaren kontzertu bat** antolatu genuen Madrilgo erdigunean, 30. urteurrena dela-eta, ekintza politikoz josita egongo den urte bati hasiera emateko.

Republik sala beterik, sistema kapitalistaren kontrako **30 urteko borroka etengabea ospatu** genuen, antolakuntzarako deialdia eginez.

**Chiko Zurdo, P.Zoes, 3YO, Mateos Malachico eta J. Barsoom** madrildar gazte raperoak eszenatokira igo ziren beraien auzo eta inguruetako eguneroko arazoak hitzez kontatzeko. Hainbat estilo ikusi ahal izan genituen, guztioi eragiten diguten egoerak salatzeko. Kontzertuak aurrera joan ahala, Durán bezalako raperoak ere ikusi genituen eszenatoki gainean.

Bestalde, estatu osoko rap taldeen partaidetza izan genuen. Valentziako **Escrottos** taldeak musika borrokalariz bete zuen eszenatokia. Argi eta garbi azaldu zuten **antolakuntza dela garaipenerako bide bakarra.**

Bartzelonatik **Ascensa Furorek** gogoeta politiko kritikoa erakutsi zuen, rap-a garaipenerako tresna gisa uzten duten kantekin. “La flama de la solidaritat” kantua izan zen beraien kantarik esanguratsuena, estatuaren klase izaera eta langileria antolatua zapaltzeko dituen tresnen analisi modura.

Ondoren **Goma 2** etorri zen Leondik. ECO, beraien rap komunistaren azken maketaren ondoren krisi kapitalistarekin gazteria langilearen egoeran murgildu ziguten. **Bittah** kantuarekin bukatu zuten, Ascensa Furorerena, gau iraultzaile eta musikalariari amaiera eman ziona.

***BATURIK INDARTSUAK GARA, ANTOLATURIK GARAITEZINAK!***

***GORA GKK/CJC-REN 30. URTEURRENA!***



1985 - 2015

Gazteria **Komunista**

30 urteurrena